## ESPETXEETATIK EUSKAL HERRIARI

# GOSE GREBAREN ARRAZOIAK

Estatu frantziar eta espainiarrean giltzaperatuak gauden euskal preso politikoak gizarteari zuzentzen gatzaio, pairatzen dugun egoera larri honetatik. Gure kontra garatzen ari den exterminio, errepresio, jarraipena, sakabanaketa lortu nahia, Euskal Herriak, bizi duen egoera ekonomiko, sozial, politiko larriari estuki loturik ulertzen dugu. Gobernu espainiarra burutzen ari den euskal nazio izaeraren ezereztatze politika berberaren emaitza da, gobernu frantziarraren eta PNVren gisara, herri bezala dagozkigun eskubideen lorpenerako aukerak baztertzeko prest dauden alderdi erregionalisten laguntzaz.

Testuinguru honetan guztiz adierazgarriak dira Kolektibo gisa bizitzen ari garen azken gertakari errepresiboak. Sakabanaketa beraren makanismoetatik hasita, eraso eta tortura tresnen zabalpenera, isolamendua, ziega aldaketa jarraiak, jipoiak edo oinarrizko eskubideen ukatze sistematikoa; eta hauei azkenaldi honetan bi elementu barri batu zaizkie, estatua ematen ari zaizkion erabilpena dela eta: intoxikazioa eta gurekin kontaktuak izateko saioak.

Noski, bergizarteratze-damutze planen porrot jarraia konprobatzean (gartzela baldintzen gogortzean oinarrituak, gerora hobekuntza batzu eskeiniz, baimenak, gradu aldaketa, borroka frontea uztearen baldintzapean eta amore eman dezan gartzela instituzioen aurrean bere erabilpen politikorako, irtenbide erreal itsura eman nahian, Kolektibo barruan irteera indibidualak erreztuz), intoxikazio politika argi bati ekin dio, ustezko grabazio batzuk aurkeztuz, Kolektiboan ahultasun eta sakabanaketa ematen delakoan, EMAN banandu nahian edo gutxienez segurtasun-eza sortu nahi Prozesuan. "Bigun eta gogorren" tesi polizial zaharra da gartzeletara trasladatua eta helburu batez, gure artean elkartasun-eza erabat bultzatzea, orain arte lortu ez dutena eskuratu nahian: sakabanaketa.

Bestalde, jarraipen eta eraso egoera hau ematen den bitartean, kontaktua izan nahian mezulariak etorri zaizkigu, promesa faltsuak eginez, gauden egoera inhumano honetan ETA Erakunde Armatua presionatuko genuelakoan "negoziaketa tekniko" bat onar dezan, eta borrokara eraman gaituzten, egoera honetara ekarri gaituzten eta borrokan segitzera bultzatzen gaituzten helburu politikoak baztertuz.

Horrela pentsatzen dutenek, PSOE eta PNVk, akats handi bat egiten dute: guretzat Negoziaketa Politikoa ez da daramagun borrokaren **helburu politikoa; Gure herriaren Subiranotasun Nazionalaren alde borrokatu gara eta borrokatuko dugu, gure izaera nazionala aitor dezaten, autodeterminazio eskubide demokratikoaren ejerzizioan oinarrituko litzatekeena;** era honetara ETA eta Estatuaren arteko Negoziaketa Politikoa da aitorpen hori burutuko dela **ziurta dezaken tresna bakarra.** Are gehiago estatutuaren bidea espainiar konstituzioaren barne, bide hila denean argi asko, espainiar zentralismoaren eta hauen plangintza europeisten aurrean, herrien existentziaren aitorpen politikoarentzat lekurik ematen ez dutenak. Eta gainera Euskal Herria krisialdi ekonomiko larri batetan murgilduta dago, egoerari aurre egiteko tresna propioen falta argi batez, Estatuak eta Europak inposatua datorrena eta gure errekurtso ekonomiko guztiekin amaitu asmo duena. Are gehiago Administrazio Publikoaren aldetik, bai vascongadoa, foral nafarra edo espainiarraren aldetik, kultur zapalketa ematen ari denean, hizkuntz eta kultur diskriminazio argi

baten bitartez Euskal Herria desnazionalizatze prozesu bat garatzen ari dena.

Kuriosoa da egoera honetan prexixoki PNVk Autodeterminazio Eskubidae baztertzea, Euskal Herriaren subiranotasun nazionalaren aitorpena baztertzea suposatzen duena. Hauda PNVren morroitzaren prezioa bere "poltronak" eta "negozioak" mantentzeko, gure herriari bizkarreratuz eta era honetara espainiar interesak defendatuz.

Kuriosoa da ere EA eta EUE alderdien zalantzagarritasuna, egoera larri hau ikusten duten arren bide "demokratikoetaz" eta "parte-hartze instituzionalaz" hitzeginez, gure herriaren subiranotasuna lortzeko.

Zein bide demokratiko? Gure herriak ezezkoa eman dion konstituzioarenak? NATOren egitura militarrean sartezea inposatzen diguten eta gazteak soldaduzka egitera behartzen dituzten "pakezale demokratikoenak"? Botere judiziala GAL taldeetan inplikatutako ejekutiboari estuki lotuta dagoen batetako demokratenak, Ynestrillas askatuz, Amedo indultatu nahian eta milaka urtetako gartzela zigorra ezartzen digutenak, konbenientzia politikoaren arabera erizpide ezberdinak erabiliz?

Zein instituzio? Autodeterminazio Eskubidea testimonialki sinatez dutenak jakin arren marko honetan bere aplikapena ezinezkoa dela? Botere errealik ez duten haiek, ekonomiko edo politikoa, gure herriaren arazoak konpontzeko? "Zuzenbidezko estatu demokratiko" batetakoak, non erreprimitu egiten den, torturatu, oinarrizko eskubideak bortxatu eta kontrolatu egiten den, korkuera legea inposatu, guardia zibilak agintzen jarraitu eta torturatzaileak indultatu egiten dituzten? Egunetik egunera ustelkeri eskandaluetan geroz eta gehiago inplikatuak dauden instituzio eta alderdiak, krisis eta miseria egoera honetan? Estatuaren interesen gestioa eginbeharra duten instituzioak, edukin gabeak, benetako boteredunak,eta herri interesei enfrentatuak?

Izan gaitezen serioak. Estatu demokratikoa eta herrien eskubide kolektibo eta indibidualak aitortu eta isladatzen dituena da, eta ez armaren indarrez hauek ukatuz bere ereduas imposatzen duena. Jarrera inposatzaile hau, esdtatuaren intrasijenzia eta arazoa konpotzeko borondate faltak eragiten du, gure eskubide eta askatasun nazionalak lortzeko posible diren bide guztiak erabiltzea.

Guztiontzat egoera argi dago, orain artean burutu dugun eta burutzen ari garen borroka herri bezala dugun duintasuna eta eskubideak berreskuratzean oinarrituta bazegoen, une honetan, inoiz baino gehiago, **Herri gisa irautekoda, kolektiboki sufritzen dugun erasoaldiaren aurrean.** Hauteskunde programa, promesa faltsu edo imagin hobetzetatik kanpo dagoen zerbait, edukinik ez duten jarrera testimonialetatik haruntzago dagoen zerbait, eta noski, ekainak 6ko hauteskundeetatik haruntzago dagoena.

Gure herriaren subiranotasun nazionalaren aldeko borrokan, **konpromezu tinko eta argi bat eskatzen du egoera honek, bere expresioa autodeterminazio eskubidearen aitorpenean duena, Negoziaketa Politikoaren bitartez, hau bait da eskubide hori bermatuko duen bide bakarra, eta Amnistia Osoa, egungo enfrentamendu politiko egoera gainditzeko.**

Planteamendu honekin koerente eta gure herriaren askapen nazionalaren aldeko borrokarekin kontsekuente, estatu frantses eta espainiarrean giltzaperatutako euskal presook **gose greba** bat hasiko dugu maiatzak 24an, **Autodeterminazioa eta Amnistiaren alde**ko borrokan dugun konpromezua birbaieztatu nahian gauden espetxetik (hala ere kolektiboak zenbat kideri eskatu dio, 50 inguru, ez dezala borroka hau burutu, pairatzen duten egoera fisiko edo sikiko makala dela eta, aurkitzen garen egoera latza eraginda, eta protestaldi bateratu honekin bat eginez beste modu batetara).

Era honetara gure herriaren geroak kezkatzen gaituela azaldu nahi dugu eta Euskal Herriko gizon zein emakumezko guztiei deialdi bat luzatu, espejismoek engainatzen utzi gabe, gure herriaren askapenaren aldeko borrokan parte har dezaten, hau ezin bait da soilik instituzio edo alderdien eskuetan geratu, Euskal Herriaren berreraikitzen nazionala guztion arteko lana bait da.

Askapen konpromezu honen koerentzia eta zintzotasunetik, gutako bat baino gehiago heriotzera eraman duena, Peio Mariñelarena esate batera, zera esan nahi dugu: ez dugula gu bahitu politiko edo truke moneta gisa erabiltzen utziko, borrokatzera eraman gaituzten helburu politikoak bazter ditzagun, eta PNV eta PSOE egiten ditugu enfrentamendu honen luzapenaren erantzule, sufritzen dugun eta gure herriak bizi duen egoera latzaren erantzule. Pello Mariñelarenari hemendik omenaldirik beroena egin nahi diogu eta berak emana zinez aitortzen diogu.

Guzti honegatik Euskal preso politikoen kolektiboak ematen diogun erantzuna, bai gu banatzeko saioei zein errepresioari eta amore emate politiko planteamenduari, ezin da beste bat izan guztion artean, eskutan ditugun medio guztiekin eta bakoitzaren konpromezuaz, Euskal Herria libre eta soberano bat lortuko dugunaren segurtasun eta kônfidantzaz.

GORA EUSKADI ASKATUTA!

JO TA KE IRABAZI ARTE !

**Euskal Preso Politikoen Kolektiboa.**

**1993ko maiatza.**